# Tourseko San Martin (11/11)

## Aurkezpena

Gaur egun Hungria lez ezagutzen dan herrialdean, Panonia urian jaioa, 316an, eta 397an hil zan. Gaztetxotan bihurtu zan kristau eta soldadiskan sartu zan, baina laster laga eban zeregin hori Poitierseko Hilario gotzainaren ikasle egiten zala. Gerora Tourseko gotzain izentatuko dabe.

Laster zabaldu zan bere izena ongilea, bakegilea eta, batez ere, pobreenganako miresmena zitualako.

Hainbeste dira bere omenez eta zaindaritzapean jazo diran eleiza, basilika eta otoitz leku, Santiago Bidean batikbat.

Kristoren jarraitzaile izaten lagundu leigu, eleiza maitatzen eta, batez ere, gure bizitzan zehar pobreak gogokoen izaten. Eskatu deiogun grazia hori ez dogulako horretan Martinen laguntzak huts egingo.

## Sarrera abestia

**AGUR, ELEIZA**, JAUNAREN EGOITZA,
HAREN GORPUTZA, HAREN ERREINUA.
AGUR, ELEIZA, MUNDUKO BIHOTZA, GUZTIEN AMA.

Zainetan dozu Jaunaren bizia,
eta hitzean Jaunaren argia.
Argitu eizu mundu hau guztia: Agur Eleiza!

Eskeintzen dozu lurrekoen lana,
gain hartarako ontzen dozu dana,
zabal daitela Jaunaren eguna: Agur Eliza!

## Abadearen agurra

† Aitaren eta semearen eta espiritu santuaren izenean.
—Amen.
† Pobreen zaintzailea dogun Jauna izan bedi zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

## Damu-otoitza

Pekatua *bestengan* baina ez geure barruan ikusten dogunok, autortu daigun Jainkoaren errukiaren beharra gure erosokeriatik,

eralgikeriatik eta pobreei ez-ikusia egitetik atara gaizan:

—Jesus Jauna, zu behartsuekin bat eginda bizi izan zinan. Erruki, Jauna.

—Jesus Jauna, zuk pobreak maite izan zenduzan. Kristo, erruki.

—Jesus Jauna, zure ikasleak pobreziara bultzatzen dozuzana. Erruki, Jauna.

Erruki dakigula Jainko guztiz ahaltsua eta gure pekatuak parkaturik eroan gaizala betiko bizitzara.

—Amen.

*(Holan badagokio…)*

**† Aintza zeruetan Jaungoikoari.**

… eta bakea lurrean haren gogoko gizakiei.
Hain handi eta eder zaitugulako,
gora Zu, bedeinkatua Zu, gorespen Zuri, ahuspez agur, eskerrak Zuri,
Jainko Jauna, zeruko Errege, Jaungoiko Aita guztiahalduna.
Jauna, Seme bakar, Jesu Kristo,
Jainko Jauna, Jainkoaren Bildots, Aitaren Seme:
Zeuk kentzen dozu munduko pekatua; erruki, Jauna;
Zeuk kentzen dozu munduko pekatua; entzun gure deia.
Aitaren eskumaldean jarririk zagoz Zu; erruki, Jauna.
Zeu bakarrik Santua, Zeu bakarrik Jauna,
Zeu bakarrik Goi-goikoa, Jesu Kristo,
Espiritu Santuarekin Jainko Aitaren argitan. Amen.

**OTOITZA**

Oi Jainko, Martin gotzain santuak goratu zaitu,
bai bizitzaz, bai heriotzaz;
barritu egizuz gure bihotzean zeure graziaren miragarriak,
ez heriotzak, ez bizitzak,
ez gagizan zure maitasunetik aldendu.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan. Amen.

**Irakurgaia**

Martin santua Espirituak erabilan gizona zala esaten zan; horregaitik ikusten ebezan harengan espirituaren dohaiak.

Amestu daiguzan geuretzat, arretaz entzunez irakurgai hau.

*Jaunak igurtzi nau,*
*behartsuei barri ona emotera bialdu nau.*
(Ik. Lk 4, 18)

**Isaias Profetaren liburutik** (Is 61, 1-3a)

Jainko Jaunaren espiritua nire gainean dago,
Jaunak igurtzi nau-eta.
Harek bialdu nau behartsuei barri ona emotera,
bihotz-urratuak osatzera,
katiguei amnistia iragartzera
eta giltzapetuei askatasuna;
Jaunaren onginahi-urtea
eta mendeku-eguna iragartzera.
Siongo atsekabetuak kontsolatzera
bialdu nau Jaunak:
koroa emongo deutset errautsaren ordez,
jaietako usain gozoa dolu-jantziaren ordez,
gorespen-kantuak etsipenaren ordez.
Jaunak esana.

**ERANTZUN SALMOA** (Sal 37 [36], 3-4. 5-6. 30-31 (R/. 30a))

**R/. Zintzoaren ahoari jakituria dario.**

Izan konfiantza Jaunagan eta egin on dana,
bizi lurraldean eta zaindu leialtasuna.
Izan bedi Jauna zure atsegina,
eta emongo deutsu zure bihotzak eskatzen dauana. R/.

Itzi Jaunaren esku zeure zoria,
izan konfiantza harengan, berak ekinean jardungo dau-eta.
Goiz-argiak lez egingo dau distira zure zuzentasunak,
eguerdiko eguzkiak lez zure zuzenbideak. R/.

Zintzoaren ahoari jakituria dario,
haren mihinak zuzen dana esaten dau.
Bere Jainkoaren legea dau bihotzean,
haren pausuak ez dabiltz kili-kolo. R/.

## Ebanjelioa

Deigarria dogu ebanjelioa; Martinen bizikerea goraltzen dau eta guri pobreak aintzat hartzea eskatzen deusku; hrexetara bultzatzen gaitu Espirituak eta Martinenganako oneraspenak. Egin deiogun harrerea aleluia abestuz.

## Aleluia

R/. Aleluia. (Mk 1, 17)
V/. Zatoze Nigaz, dino Jaunak,
eta giza arrantzale egingo zaituet. R/.

*Nire seniderik txikien honeetako bati egin zeuntsoena*
*neuri egin zeunsten.*

✠ **Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik** (Mt 25, 31-46)

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Gizonaren Semea —eta aingeru guztiak beragaz— aintzaz beterik etortzean, bere errege-aulki ospetsuan jesarriko da, eta herri guztiak haren aurrean batuko dabez. Harek batzuk besteakandik banandu egingo ditu, artzainak ardiak ahuntzengandik banatzen dituan lez: ardiak bere eskumaldean ipiniko ditu, eta ahuntzak ezkerraldean.

Orduan, erregeak esango deutse eskoikoei: "Zatoze, nire Aitaren bedeinkatuok; hartu egizue munduaren sortzetik zuentzat prestaturik dagoan erreinua. Ze gose nintzan, eta jaten emon zeunsten; egarri, eta edaten emon; arrotz, eta etxean hartu ninduzuen; biluzik nengoan, eta jantzi egin ninduzuen; gaixorik, eta bisitatu; espetxean, eta ikustera etorri zinien".

Orduan, zintzoek erantzungo deutsoe: "Jauna, noiz ikusi zinduguzan goserik, eta emon geuntsun jaten, edota egarri, eta edaten emon? Noiz ikusi zinduguzan arrotz, eta etxean hartu, edota biluzik, eta jantzi? Noiz ikusi zinduguzan gaixorik edota espetxean, eta ikustera joan?"

Eta erregeak erantzungo deutse: "Bene-benetan dinotsuet: nire senide txikien honeetariko bati egin zeuntsoena neuri egin zeunsten".

Jaunak esana.

**HRRI-OTOITZA**

Ondo bizi gara, eta eskale jarriko gara. Izan daiguzan gogoan behartsuak, baztertuak eta gure gizarteak aintzat hartzen ez dituanak:

—Eleizearen alde: Frantzisko aita santuaren guraria aintzat hartu daian, eta benetan izan daitezan pobreak bere lehentasun, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

**ZEUGAN DOGU USTE ONA**

—Hil honetarako izentatua izan da POBREEN ALDEKO JARDUNALDIA. Gogo biziz esku hartu daigula bai geure emoitzaz eta baita kontsumo murrizteaz ere, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Burua jaso ezinik dagozan herrialde pobreen alde: euren aldarria entzuna izan daiten eta kanpo zorra ezabatzeaz erantzun dakien, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

Martin santua omentzeko alkartu garanok aintzat hartu daigun Caritasen lana, eta gure lehentasunetan sartu daigun pobreekin bat egiteko gogo sutsuaz, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

Pobreen zaintzaile zaran eta gure artean hareenganako begiramena sortzen dozuna: emoiguzu kontsumoa murrizteko adorea eta pobrezia besarkatzeko gogoa. Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

—Amen.

## EUKARISTIAREN LITURGIA

Bedeinkatua Zu, Jauna, zeru-lurren Jaungoikoa;
zeure esku zabaletik hartu dogu
orain ekarri deutsugun ogi hau,
lurraren indarrak eta gizakiaren lanak sortua;
hauxe egingo jaku biziaren ogi.

Bedeinkatua Zu, Jauna, orain eta beti.

Bedeinkatua Zu, Jauna, zeru-lurren Jaungoikoa;
zeure esku zabaletik hartu dogu
orain ekarri deutsugun ardao hau,
mahatsondoaren indarrak eta gizakiaren lanak sortua;
hauxe egingo jaku betiko zorionaren edari.

Bedeinkatua Zu, Jauna, orain eta beti.

Senideok,
egin daigun otoitz guztiok batean,
Eleiza osoaren oparia Jainkoari eskeintzerakoan.

Jainkoa goresteko eta gizakia salbatzeko.

**Oparien gaineko otoitza**

Jainko Jauna, egizuz santu,
Martin santuaren egun honetan
pozik ekarri doguzan oparigaiak;
lagundu deiguela, lur honetako atsegin-atsekabeen artean,
beti zure bideetan ibiltzen.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez. Amen.

Egoki da bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta

beti guk Zuri eskerrak e-mo-te-a, Jauna, Aita guz-tiz san-tu,

Jainko ahalguztidun betiko ho-rri, Jesu Kristo gure Jau-na-ren

bi-tar-tez. Zeure santu-en fede–autormen ederraz indar barria

emoten deutsazu beti zeure E-lei-za-ri eta argi-ro erakusten guri

zeure mai-ta-su-na. Zure salbamen–asmoa gugan be-te da-din,

santuen jarraibide ederrak eragiten deus-ku eta euren o-toi-tzak

la-gun-tzen. Horregai-tik, geuk ere, aingeru eta santu guztiekin ba-

te-ra, goresten zaitu-gu, Jau-na, poz be-te-an kan-ta-ri:

**Prefazioa**

V./ Jauna zuekin — R./ Eta zure espirituarekin

V./ Gora bihotzak — R./ Jaunagan daukaguz

V./ Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari — R./ Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen
non-nahi ta beti zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jaungoiko ahalguztidun, betiko horri,
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

Zure santuen fede-autormen ederraz
indar barria emoten deutsozu zure elizeari
eta argiro erakusten guri zure maitasuna
zure seme-alaben asmoa gugan bete dadin
Santuen ejenplu ederrak eragiten deusku
eta euren otoitzak laguntzen.

Horregaitik geuk ere
aingeru eta santu guztiekin batean
goresten zaitugu, Jauna,
poz betean kantari:

**SANTU, SANTU, SANTUA**
Santu, Santu, Santua
diren guztien Jainko Jauna.
Zeru-lurrak beterik daukaz zure diztirak.
Hosanna zeru goienetan!
Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena.
Hosanna zeru-goienetan!

## II. EUKARISTI OTOITZA

**Santu zara**, bai, Jauna,
eta santutasun guztiaren iturri;
egizuz, bada, santu ogi-ardao honeek,
zeure Espiritua isuriz,
Jesu Kristo gure Jaunaren Gorputz eta † Odol
egin daitezan guretzat.

**Berak**, saldu ebenean
eta bere gogoz kurutzera joiala,
ogia hartu eta, eskerrak emonez,

zatitu eban eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

**Era berean**, afalondoan, kaliza harturik,
barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**V/.** Hau da sinismenaren misterioa.

**R/.** Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte,
hau dogu, hau, barri ona!

**Horregaitik**, Jauna,
zure Semearen heriotza eta biztuera gogoratuz,
biziaren ogia eta salbamenaren kaliza
eskeintzen deutsuguz,
Zuri eskerrak emonez,
altaran zeure zerbitzari onartu gaituzulako.

**Eta apalik** eskatzen deutsugu,
Kristoren Gorputza eta Odola hartzen ditugunok
Espiritu Santuak bat egin gaizala.

**Izan gogoan**, Jauna,
mundu guztian zabaldurik dagoan zeure Eleizea;
eroaizu maitasun osora,
Frantzisko gure Aita Santuarekin,
Joseba gure Gotzainarekin,
~~*(I. Gotzain Laguntzailearekin,)*~~

eta eleiz-gizon (-emakume) guztiekin batean.

**Era berean**, izan gogoan, Jauna,
gaur mundu honetatik zeugana eroan dozun
**I.** zure zerbitzaria;
zure Semearekin bat egin dan hau
biztueran ere berarekin bat izan dadila.

**Baita izan** gogoan, Jauna,
bizteko itxaropenean joan diran gure senideak
eta hildako guztiak ere;
hartu egizuz zeure aurpegiaren argitan.

**Erruki zakiguz**, arren,
guk guztiok betiko bizitza jaritsi daigun,
Jainkoaren Ama Maria Birjina dohatsuarekin,
haren senar Jose santuarekin,
**Martin** santu dohatsuarekin,
eta, gizaldi guztietan,
zure adiskide izan diran santuekin;
eurekin batera goratu zaiguzan,
Jesu Kristo zure Semearen bitartez.

HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN,
ZURI, JAINKO AITA AHALGUZTIDUN HORRI,
ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN,
OSPE ETA AINTZA GUZTIA
GIZALDI ETA GIZALDI GUZTIETAN.

**Amen.**

† Salbatzaileak agindu eta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun honetako ogia;

parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik, emoiguzu bakea gure egunotan, zure errukiari esker pekatutik garbi bizi izan gaitezan eta estualdietan sendo; betiko zorionaren itxaropenean Jesukristo gure Salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozela.

—Zeurea dozu erregetza; zeureak ospe ta indarra orain eta beti.

† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei ‘bakea izten deutsuet, neure bakea emoten’; begira zure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa danez, emoiozu Eleizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.

—Amen.

† Jaunaren bakea beti zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

† Emon deiogun bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: Erruki, Jauna.
… emoiguzu bakea.

**Jaunartzea**

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:

—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

**Jaunartzean**

**Zabal bihotzok errukirako,**

**sendo bihotzok borrokarako.**

—Gizon-emakume barri, kondairaren eragile
gizatasun barriaren oinarri eta egile.
Gizon-emakume barri arriskuen onartzaile,
fede-bizitzan ausarta, zailtasunetan garaile.

—Gizon-emakume barri, esperantzaren gudari,
zuzenaren gose-egarri, egi bidean bidari.
Gizon-emakume barri, ez kate ta ez lokarri,
askatasunaren jabe eta askatasun-azkarri.

—Gizon-emakume barri, mugaz-gaindiko maitale,
alkar artean oretuz arraza eta lurralde.
Gizon-emakume barri, pobreen artean pobre,
hauekin alkarbanatuz etxeko ogi ta aterpe.

## Jaunartze ondorengoa

Jauna, batasunaren sakramentua emon deuskuzu janari;
egizu, bizi izan izgaitezala beti
zure borondatea bete-betean eginez;
Martin santua osorik zure esaneko izan zan lez,
geu ere poztu gaitezan benetan zeureak izateaz.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez. —Amen.

Toursko Martinen omenez dogu ospatu meza santua;
bera dogula eredu-lagun eroan dagigun sua.
Pobrezia ta injustizia ezabatzeko gogua;
*maitasunezko sutean daiten kixkali gure mundua.*

## Azken onespena

† Jauna zuekin.
*- Eta zure espirituarekin*

† Bedeinka ta gorde gaizala Jainko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak eta Espiritu Santuak.
- *Amen*.

